# JESUSEN BIHOTZ GUZTIZ SANTUA

Jai Nagusia

**B urtean**

## Sarrera-oharra

Ondo etorri, senideok, Jesusen Bihotzaren jai honetako Liturgiara. Maite-maite gaitula Jainkoak ospatuko dogu, eta guk egin geiken gauzarik handiena maitatzea dala. Zein beharrezko dogun maitasuna gure egunetarako!

Murgildu gaitezan, ba, Jesusen bihotzean, Jainkoaren maitasunaz ase-betez, geure inguruan isurteko.

## Abestia

Izan zaitez beti, Jesus maitea,
gure bihotzaren Jaun ta Jaubea.

Jesusen bihotza dago suturik,
maitasuna agertzen alde guztitik.

Non aurkituko da bihotz gogorrik
bihotz honen suan urtuko ez danik.

## Abadearen agurra

† Aitaren eta Semearen eta Espiritu Santuaren izenean.
—Amen.
† Maitasunetik sortua izanik, maitasunean bizi izatera deitzen gaituan Jauna izan bedi zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

## Damu-otoitza

Maitasunaz berba asko eta abesti asko entzuten dogu egunotan; baina zalantzak daukaguz guztia ete dan maitasuna. Hartu daigun babes Jainkoaren errukian berak sutu gaizan.

—Jesus Jauna, Jainkoaren maitasunean bizi izan zinana, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna, Jainkoaren maitasuna isurten deuskuzuna, *Kristo, erruki*.

—Jesus Jauna, alkar maitatzeko agindua emon deuskuzuna, *erruki, Jauna*.
(*Aintza*)

† Aintza zeruetan Jaungoikoari.

—Aintza zuri, Jauna, ta eskerrak zuri.

**OTOITZA**

Jainko ahalguztiduna,
zure Seme maitearen Bihotza gorestean,
maitasunez gure alde gauzatu dozuzan egintzak
pozik ospatzen doguz; egizu,
hartu daigula zeruko iturri horri gainezka darion grazia.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

**Lehenengo Irakurgaiari sarrerea** (*Ez* 34, 11-16)

Somatzen dogu, benetan, Jainkoak babestuta bizi garala? Larrialdietan joten dogu harengana? Ea zer aurkitzen dogun Ezekiel profetaren berbotan.

*Nik Neuk larratuko ditut ardiak*
*eta Neuk hartuarazoko deutset atseden.*

Ezekielen Profezia liburutik

Hau dino Jainko Jaunak: «Ni Neu egingo naz artaldearen kargu, Neu arduratuko haretaz. Artzaina, artaldea sakabanatu jakonean, ardiekin arduratzen dan lez, halantxe arduratuko naz Ni neure ardiekin; egun lainotsu eta ilunean sakabanaturiko toki guztietatik atarako ditut.

Herri eta lurralde arrotzetatik atarako ditut eta batuko, eta euren lurraldera eroango; Israelgo mendietan larratuko ditut, ibar heze eta lurraldeko herritxu guztietan. Larre oparotan janarituko ditut eta Israelgo mendi garaietan izango dabez arditegiak; barruti ederretan hartuko dabe atseden eta larre oparotan janarituko dira Israelgo mendietan.

Nik Neuk larratuko ditut ardiak eta Neuk hartuarazoko deutset atseden –dino Jainko Jaunak–. Ardi galduaren bila joango naz, desbideratua artaldera batuko dot, hanka hausia lotuko, gaixoa indartuko; gizenak eta indartsuak zainduko ditut. Behar dan lez larratuko ditut ardiak».

Jaunak esana.

**Erantzun salmoa** (Sal 23 [22], 1-3. 4. 5. 6 (R/. 1))

**R/. Jauna dot artzain, ez naz ezeren beharrean.**

V/. Jauna dot artzain, ez naz ezeren beharrean;
larre gurietan etzunarazoten nau,
ur-bazter nasaira eroaten
eta indarrak deustaz barritzen;
bide segurutik naroa,
bere izenari ohore eginez. R/.

V/. Ibar baltz ilunean banabil be,
ez naz gatxaren bildur,
Zu nigaz zagoz-eta;
zure artzain-makilak nasaitzen nau. R/.

V/. Mahaia atontzen deustazu
arerioen begi-bistan;
orioz igurzten deustazu burua,
gainezka dot edontzia. R/.

V/. Zoriona eta maitasuna ditut lagun,
bizitzako egun guztietan,
eta Jaunaren etxean biziko naz
amaibako egunetan. R/.

**II. Irakurgaiari sarrerea** (*Erm* 5, 5b-11)

Ezpanetan darabilgu Jainkoak maite gaitula, baina, berba hutsa ez ete da? Ea irakurgai honek Jainkoaren maitasuna benetan somatzera garoazan

*Honan erakusten dau Jainkoak guri deuskun maitasuna.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

Senideok: Jainkoak bere maitasuna isuri deusku bihotzera, emon deuskun Espiritu Santuaren bitartez. Izan be, oraindino pekatupean indar barik gengozala, Kristo, Jainkoak erabagitako sasoian, gaiztoen alde hil zan. Nekez onartuko leuke norbaitek pertsona zuzen baten alde hiltzea; halan be, pertsona on baten alde baleiteke norbait hiltzeko prest egotea.

Baina Kristo, oraindino gu pekatari ginala, hil zan gure alde; honan erakusten dau Jainkoak guri deuskun maitasuna.

Orain Jainkoak Kristoren odolaz zintzotzat hartu gaituala, zenbatez gehiago ez ete gaitu salbatuko zigorretik beraren bitartez!

Arerio ginala, Jainkoak beragaz adiskidetu baginduzan bere Semearen heriotzari esker, zenbatez gehiago, behin adiskidetuta gero, ez ete gaitu salbatuko haren biziari esker! Gehiago oraindino, harrotu be egiten gara Jainkoaz Jesu Kristo gure Jaunari esker, honen bitartez Jainkoagaz adiskidetzea lortu dogu-eta honezkero.

Jaunak esana.

**Aleluia** (*Jn* 10, 14)

V/. Neu naz artzain ona, dino Jaunak;
ezagutzen ditut neure ardiak,
eta neureek ezagutzen nabe Ni. R/.

**Ebanjelioari sarrerea** (*Lk* 15, 3-7)

Jesusen artzaintza burubakotzat hartua izan daiteke, edo maitasunaren neurribakotasunetik ulertu. Egin deiogun harrerea ebanjelioari Aleluia abestuz, zutunik.

*Poztu zaiteze nigaz,*
*aurkitu dot-eta galdutako ardia.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

Aldi haretan, parabola hau esan eutsen Jesusek fariseuei eta lege-maisuei: «Zuetako bat, ehun ardi izan eta bat galtzen bajako, ez ete da beste laurogeta hemeretziak larrean itzirik, galdutakoaren bila joaten aurkitu arte? Eta, aurkitzean, lepoan hartzen dau poz-pozik eta, etxera heltzean, lagunak eta auzokoak batu eta esaten deutse: “Poztu zaiteze nigaz, galdutako ardia aurkitu dot-eta”.

Ba, egia esan: «Jainkoak be poz handiagoa hartzen dau bihotz-barritzen dan pekatari bategaitik bihotz-barritu beharrik ez daben laurogeta hemeretzi zintzoakaitik baino.

Jaunak esana.

## HOMILIA

## JAINKO HERRIAREN OTOITZA (Eskariak)

Jainkoaren debekua eta zigorra somatzen dogunok, zabaldu daigun barrua haren maitasun samurrera, eta eskatu:

—Eleizearen alde: gizaki guztiek aurkitu daien leku haren altzoan, batez ere baztertuek, ezereztuek eta inon ere lekurik aurkitzen ez dabenek, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

**ZEUGAN DOGU USTE ONA**

—Gure gizarteak baztertzen dituen ezindu, gaixo, zahar eta sufritzen dihardduen beste guztiek leku izan daien gure bihotzean, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

— Agintarien eta ahaltsuen alde: diru-gosetik barik behartsuak kontuan izatetik bizi izan daitezan, gizarte hobe bat eraikiz horrela, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Eukaristiaren mahaia inguratzen dogunok Jainkoak maite gaitula geure egintzetan iragarri daigun, alkarte egiten ahaleginduz, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

Hirutasunean alkar maitasuna iragarten deuskuzun Jainkoa: isuri eiguzuz Jesusen bihotzetiko ur-odolak, garbitu eta bizi-barritu gaiezan. Jesu Kristo gure Jaun berberaren bitartez.

—Amen.

**OPARIEN GAINEKOA**

Begitu, Jauna, zeure Semearen Bihotzeko
maitasun neurribakoari;
egizu, gure eskeintza hau atsegingarri izan dadila
Zuretzat
eta lortu deigula guri pekatu guztien parkamena.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**PREFAZIOA**

Jauna zuekin — Eta zure espirituarekin
Gora bihotzak. — Jaunagan daukaguz
Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari. — Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Berak, maitasun harrigarriak eraginik
kurutzera jaso ebenean,
bere burua gure alde eskeini eban
eta bere saihets edegitik odola eta ura isuri zituan,
handik sortu eitezan Eleizaren sakramentuak,
eta gizon-emakume guztiek,
Salbatzailearen Bihotz edegira baturik,
pozik edan egien salbamenaren iturritik.

Horregaitik, santu eta aingeru guztiekin batera
goresten zaitugu,
beti eta beti [esaten] abesten deutsugula:

Santu, Santu, Santua...

## ADISKIDETZEAREN I. EUKRISTI-OTOITZA

**Santu** zara, bai, Jauna.
Zuk, munduaren hasieratik,
on jakona emoten deutsazu gizakiari,
santu izan dadin, Zu santu zaran lez.

**Begitu**, arren, zeure herriaren dohaiei
eta isuri horreen gainera zeure Espirituaren indarra,
eskeintza honeek
Jesu Kristo zure Seme maitearen
Gorputz eta ✠ Odol egin daitezan,
beragan garealako zure seme-alaba.

**Galduta** gengozala eta Zugana ezin hurreratu ginanean,
azkeneraino maite izan ginduzuzan;
zuzen bakarra dan zure Semeak
geure eskuetara emon eban bere burua
eta kurutzeratu egin eben.

**Baina**, bere besoak zeru-lurren artean zabalduz
zure itunaren betiko ezaugarria egin baino lehen,

bere ikasleekin Pazkoa ospatu nahi izan eban.
**Eurekin** mahaian egoala,
ogia hartu eta, Zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban,
zatitu eta hareei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

**Era berean**, afalondoan,
kurutzean isuriko eban odolaz
gauza guztiak beragaz baketuko zituala jakinik,
hartu eban kaliza ardaoz betea
eta, barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**Hau da sinismenaren misterioa.**

Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte,
hau dogu, hau, barri ona!

**Horregaitik**, Jauna, Jesu Kristo gure Pazkoa
eta gure behin betiko bakea gogoratuz,
haren heriotza eta hilen artetik biztea ospatzen dogula
eta haren azken etorrerako egun pozgarria itxaroten dogula,
eskeintzen deutsugu Zuri,
Jainko zuzen eta leial horri,
gizakiak Zurekin baketzen dituan oparia.

**Aita** guztiz ona,
begitu begi onez zeure Semearen sakrifizioaz
Zeurekin bat egiten dituzunei,
eta egizu, ogi eta kaliza beretik hartzen dabela,
Espiritu Santuaren indarrez
gorputz bat izan daitezala Kristogan,
ezelako zatiketa barik.

**Egizu**, gu guztiok gogo-bihotzez
bat izan gaitezala alkarrekin,
**LEON** gure Aita Santuarekin,
eta Joseba gure Gotzainarekin,
~~eta I. Gotzain Laguntzailearekin.~~

**Emoiguzu** zeure erreinuaren etorrera prestatzeko indarra,
zure ondoan agertuko garan ordura arte;
han santu izango gara, zeruko santuen artean,
Jainkoaren Ama Maria Birjina dohatsuarekin,
Apostoluekin eta santu guztiekin,
eta zure errukiaren esku izten ditugun
**I. eta I.,** hildako gure senideekin.

Orduan, izaki barri eginik,
azkenean pekatutik eta heriotzatik askatuta,
beti bizi dan Kristoren esker ona abestuko deutsugu.

Honen bitartez, honekin eta honengan,
Zuri, Jainko Aita ahalguztidun horri,
Espiritu Santuarekin batean,
ospe eta aintza guztia
gizaldi eta gizaldi guztietan.

Amen.

Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,

etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur
egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik,
emoiguzu bakea gure egunotan,
zure errukiari esker
pekatutik garbi bizi izan gaitezan
eta estualdietan sendo;
betiko zorionaren itxaropenean,
Jesu Kristo gure Salbatzailea
noiz etorriko dan zain gagozala.

*- Zeurea dozu erregetza;*
*zeureak ospe ta indarra orain eta beti.*

**BAKE ESKEINTZEA** (Abadeak)
† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei 'bakea izten deutsuet, neure bakea emoten'; begira zure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa danez, emoiozu eleizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zarata, gizaldi eta gizaldietan. *- Amen.*

† Jaunaren bakea beti zuekin
*- Eta zure espirituarekin.*

† Emoiozue bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*
Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *emoiguzu bakea*

## JAUNARTZEA

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:

—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

**Jaunartzean**

**Izan zaitez beti, Jesus maitea,**
**gure bihotzaren Jaun ta Jaubea**.

Ez dau Jesus onak ez atseginik
gu oso bereak egin gaberik.

Bere bihotzean danok harturik,
geratzen da Jauna pozez beterik.

**JAUNARTZE ONDORENGOA**

Zure maitasunaren sakramentu honek
erakarri gaizala beti, Jauna, zure Semeagana,
haren maitasunak beroturik,
geure senideengan bera ikusten jakin daigun.
Errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

## Azken onespena

† Jauna zuekin.
—*Eta zure espirituarekin*

† Bedeinka ta gorde zaizela Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak † eta Espiritu Santuak.
—*Amen*.

## JESUS MUNDUKO ARGIA
## Jesus zinezko egia. Jesus betiko bizia.

† Zoaze Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jaungoikoari.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta

beti guk Zuri eskerrak e-mo-te-a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu, Jainko

ahalguztidun betiko ho - rri, Jesu Kristo gure Jau-na-ren bi-tar-tez

Be - rak, maitasun harrigarriak eraginda kurutzera jaso e - be - ne - an,

bere buru - a gure alde eskeini ebalako eta bere saihets edegitik

odola eta ura isuri zi - tu - an, handik sortu eitezan Eleizaren sakra -

men - tu - ak, eta gizon–emakume guztiek, Salbatzailearen Bihotz

edegira ba-tu - rik, pozik edan egien salba - me-na-ren i - tu - rri-tik.

Horregai-tik, santu eta aingeru guztiekin ba-te-ra goresten zai-tu-gu,

beti eta beti a - bes-ten deu-tsu-gu-la: